## Sarrera-oharra



Egunon, senideok, san Migel Goiaingeruaren omenez mezea ospatzera batu zareen guztioi; haren laguntzaz onetsi daigula Jainkoa.

Elizearen ardurea zan Ebanjelioaren barri bazter guztietara zabaltzea, eta horren ondorio dogu han-hor-hemen kristauak alkartzeko ermitak, eta euretan mezea ospatzea.

Gaur egun ba dagoz Elizan beste ardura batzuk: urteen eta agintearen podazuz batutako zikinkeria guztia garbitzea, eliztarren uste ona berreskuratzea, galdu-hainean doan sinismena bizkortzea, Elizan emakumearen lekua aurkitzea…

Migel Goiaingeruak Deabru guztiak bota ebazan lez ez ete deusku lagunduko gaur egungo deabru guztiok ezabatzen! Jainkoaren zerbitzari izatetik hasi behar izango dogu, eta Jesus maitatzera garoazan Ebanjelioa besarkatzetik. Emon daigun urrats bat gaurkoan.

## Abadearen agurra

† Aitaren eta Semearen…

—Amen.

† Jaungoiko gure Aitaren eta Jesukristo gure Jaunaren grazia eta bakea zuekin.

—Bedeinkatua Jaungoikoa Jesukristo gure Jaunaren Aita.

## Damu-otoitza

Handi izan gura dauanak txiki izaten eta txikiei zerbitzen ikasi behar dauala irakatsi euskun

Nazaretarrak. Baina guk menpean hartu gura doguz txikiak, handikerian. Damutu gaitezan:
—Jesus Jauna, txikien artean txi**ki** egin zinana, *erruki, Jauna*.
—Jesus Jauna, txikien zerbitza**ri** egin zinana, *Kristo, erruki*.
—Jesus Jauna, txikitasunean **mai**te gaituzuna, *erruki, Jauna*.

**AINTZA**

**Aintza Jaungoiko Aitari**.
Aintza Haren Semeari.
Aintza Espiritu Santuari.

**OTOITZA**

Oi Jainko,
zeure jakituria miragarrian euren eginkizuna ezarri deutsezu,
bai aingeruei, bai gizon-emakumeei;
egizu, onez, zeruan beti zeure zerbitzari dozuzanak
lurrean geure biziaren zaintzaile izan daiguzala.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez,
Zurekin eta Espiritu Santuarekin batean
Jainko eta errege bizi da-eta gizaldi eta gizaldietan.

**Lehenengo irakurgaiari**

Irudietan emoten jakunak haren esangurara eroan behar gaitu; ez gaitu bere argitasunean itsutu behar. Eta horretarako hausnarketea dogu beharrezko. Arretaz entzun daigun, ba, eta otoitz-gai bihurtu daigun orain entzungo dogun irudimen hau.

**Daniel Profetearen liburutik** (Dn 7, 9-10. 13-14)

Nik, Danielek, ikuskaria izan neban gauez. Begira

nengoala, tronu batzuk jarri ebezan eta gizon zahar bat jesarri zan.
Haren soinekoa edurra baizen zuri,
buruko ulea artulea baizen garbi!
Haren aulkia eta gurpilak, sugar kiskalgarri!
Suzko ibaiak urteten eban haren aurretik.
Jentetza izugarria eban zerbitzari,
milaka eta milaka egozan haren aurrean zutunik.
Auzia hasi eta zabaldu ziran liburuak.
Neure gau-ikuskarian, gizaseme antzeko bat ikusi neban zeruko hodeietan etortzen. Gizon zaharragana hurreratu zanean, beroni aurkeztu eutsoen. Agintea, aintza eta erregetza emon eutsoen: herri, nazino eta hizkuntza guztietako jenteak zerbitzen eban.
Haren agintea betierekoa, ez da inoiz amaituko;
haren erregetza ez da inoiz hondatuko.

Jaunak esana

**ERANTZUN-SALMOA** Sal 138 [137], 1-2a. 2b-3. 4-5 (R/. ik. 1c)

Salmo honen laguntzaz geure burua, sorkuntza ederraren barruan, beste izaki guztiekaz batera garala esango dogu, eta alkarregaz Jainkoa onetsi.

**R/. Eresi egingo deutsut, Jauna,**
**aingeruen aurrean**

Udaia'14
Goiaingeruen jaia: Sal 137
E-re-si e-gin-go deu-tsut, Jau-na, ain-ge-ru-en au-rre-an.

Eskerrak emoten deutsudaz, Jauna, bihotz-bihotzez,
nire hitzak entzun dozuzalako;
kantuz goratzen zaitut aingeruen aurrean,

eta zure tenplu santurantz begira ahuspezten naz. R/.

Eskerrak emoten deutsadaz zure izenari,
zure maitasun eta leialtasunagaitik,
parebakoak egin dozuz-eta
zeure izena eta promesa.
Dei egin neutsunean, erantzun zeunstan,
kemena bizkortu bihotzean. R/.
Eskerrak emongo deutsuez, Jauna, munduko errege guztiek,
zure ahoko berbak entzutean;
kantuz ospatuko dabez Jaunaren bideak:
handia da Jaunaren ospea benetan. R/.

**EBANJELIOA**

Aingeruak Jainkoaren zerbitzari lez aitatzen dan ebanjelio zati honetan beste gauza ederrik ere aitatzen da: Jesusek Natanael (edo Bartolome)ri buruz dinoana. Geugaitik ere esan daitela bilatu daigun, harrerea Aleluia abestuz, zutunik.

*Jainkoaren aingeruak gora eta behera ikusiko dozuez,*
*Gizonaren Semearen gainean*

**Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik** (Jn 1, 47-51)

Aldi haretan, Jesusek Natanael beragana etortzen ikusi eta esan eban:«Hona hemen benetako israeldarra, faltsukeriarik bakoa». Natanaelek esan eutson: «Nondik ezagutzen nozu?» Jesusek erantzun: «Felipek zuri dei egin baino lehen, ikopean zinala, ikusi izan zindudazan».

Natanaelek erantzun eutson: «Maisu, Zu Jainkoaren Semea zara; Zu Israelgo erregea zara». Jesusek erantzun: «Ikopean ikusi zindudazala esan deutsudalako, sinisten dozu? Handiagorik be ikusiko

dozu». Eta esan eutson, gainera: «Bene-benetan dinotsuet: Zerua zabalik ikusiko dozue eta Jainkoaren aingeruak gora eta behera Gizonaren Semearen gainean».

**ESKARIAK**

† Goiaingeruen jai honek Jainkoak gure zelango ardurea daukan erakusten deusku. Eta zenbat aldendu diran harengandik bizitzeak zigortu dituanean. Izan daiguzan gogoan gure otoitzean:

—Elizearen alde: Jainkoaren aurpegi arduratsua eta alaia erakusten eta gaurko gizakiei hurreratzen ahalegindu daiten, *eskatzen deutsugu, Jauna (Zeugan dogu uste ona)*.

—Atsekaberen batek jota, Jainkoagazko hartu-emonak bazterreratu dabezanen alde: ulertu daien Jainkoak ez dauzela baztertzen, beti euren ondoan dagoala baino euren zoritxarrean lagun egiten, *eskatzen deutsugu, Jauna (Zeugan dogu uste ona)*.

—Zoritxarrean bizi diran ume esplotatuak, emakume bortxatatuak, herrialde pobretuak eta lanik bakoak edo etxetik kanporatuak… gure gogoko eta otoizgai bihurtu daiguzan, eta Jainkoagana hurreratu daiguzan, *eskatzen deutsugu, Jauna (Zeugan dogu uste ona)*.

—Goiaingeruen jai honetan Jainkoaren hurtasuna somatzen dogunon alde: Jainkoagazko hartu-emonak sakondu daiguzan, gaurkotu eta alkarbanatu, *eskatzen deutsugu, Jauna (Zeugan dogu uste ona)*.

† Guganako zure hurtasuna *bialduen* bitartez adierazten dogu, Jauna: emoiguzu zugazko hartu-emonak guretzat pozgarriak eta asegarriak izan daitezela. Jesukristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

**OPARIEN GAINEKOA**

Oparigaiak aurkezten deutsuguz, Jauna, Zu goresteko,
eta apalik eskatzen,
aingeruek zure aintzaren aurrera eroanik,
onartu daizuzala bihotz onez
eta egin daiguzala guretzat sakramentu salbagarri.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**PREFAZIOA**

Jauna zuekin................................Eta zure espiritaurekin
Gora bihotzak..................................Jaunagan daukaguz
Eskerrak Jaungoiko gure Jaunari……Egoki da eta zuzen.

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta salbagarri,
nonahi eta beti guk Zuri eskerrak emotea,
Jauna, Aita guztiz santu,
Jainko ahalguztidun betiko horri.

Eta zure handitasuna gorestea,
Aingeruak eta goiaingeruak ospatzean.
Horreei emoten deutsegun ospeak
Zeu goresten zaitu, Jauna,
eta horreei autortzen deutsegun edertasunak
erakusten deusku Zu neurribakoa zarala
eta izaki guztiak baino goragokoa,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Honen bitartez dau aingeruen taldeak
zure santutasuna goresten
eta, eurekin batean, geuk ere pozik adoratzen zaitugu
bihotz batez [esanez] kantari:

Santu, santu, santua…

**III. Eukaristi-Otoitza**

Santu zara, bai, Jauna,
eta diran guztiek emoten deutsue behar dan gorespena.
Zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren bitarte
eta Espiritu Santuaren indarrez,
Zeuk biziazoten dituzu guztiak eta santutzen
eta Zeuk diharduzu beti eta beti zeure herria batzen,
eguzkialde batetik besteraino
opari garbia eskeini dakizun.

Apalik, beraz, Jauna, eskatzen deutsugu:
egin daizuzala santu,,zeure Espirituaren indarrez,
oparitako ekarri ditugun ogi-ardao honeek,
zure Seme Jesu Kristo gure Jaunaren
Gorputz eta † Odol egin daitezan,
misterio honeek berak agindurik egiten ditugun ezkero.
Berak, saldu eben gau haretan,
ogia hartu eta, Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban,
zatitu eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA JAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE GORPUTZA DA-ETA,
ZUENTZAT EMONGO DANA.

Era berean, afalondoan, kaliza harturik,
Zuri eskerrak emonez, bedeinkatu eban
eta bere ikasleei emon eutsen, esanez:

HARTU EIZUE ETA EDAN GUZTIOK HONETATIK:
HAU NEURE ODOLAREN KALIZA DA-ETA,
ITUN BARRI ETA BETIKOAREN ODOLA,
ZUENTZAT ETA ASKORENTZAT
PEKATUAK PARKATZEKO ISURIKO DANA.

EGIZUE HAU NEURE OROIGARRI.

**Hau da sinismenaren misterioa.**
Hil eta biztu zarala, Jauna,
Zu barriz etorri arte, hau dogu, hau, barri ona!

Horregaitik, Jauna, guk,
zure Semearen nekaldi salbagarria eta hilen artetik biztea
eta zeruratze miragarria gogoratuz,
haren azken etorrera itxaroten dogula,
Zuri eskerrak emoteko eskeintzen deutsugu
sakrifizio bizi eta santu hau.

Begira, Jauna, zeure Eleizearen eskeintza honi;
ikusi eskeintza honetan
Zurekin baketu gaituan Jesu Kristoren oparia;
egizu, Jauna, zure Semearen
Gorputza eta Odola hartzen ditugunok,
Espiritu Santuaz beterik, Jesu Kristogan
gorputz bat eta espiritu bat izan gaitezala.

Berak egin gaizala Zuretzat betiko opari,
zure aukeratuekin zerua jaritsi daigun:
lehenengo, Maria guztiz dohatsua,
Jainkoaren Ama beti Birjinarekin,
haren senar Jose santuarekin,
zure Apostolu eta martiri santuekin,
**Goioaingeru** eta zeruko talde guztiekin;
badakigu, honeen bitartez
zure laguntza izango doguna nonahi eta beti.

Gu Zurekin baketzen gaituan opari hau izan bedi, Jauna,
mundu guztiarentzat bake eta salbamen.

Mundu honetako ibilaldian,
bete egizu sinismenez eta maitasunez zeure Eleizea:
zeure zerbitzari Frantzisko gure Aita Santua,
Joseba gure Gotzaina,
beste gotzain eta eleizgizon guztiak
eta zeurea dozun herri osoa.

Entzun, bihotz onez,
zeure aurrera deitu dozun familia honen otoitzak;
Aita guztiz ona, erakarri Zeugana
mundu zabalean banaturik dabiltzan zeure seme-alabak.

† Hildako gure senideak,
eta mundu honetatik Zurekin adiskide joan diran guztiak,
hartu egizuz bihotz onez zeure zeruan;
geuk ere sinisten dogu
zure aintzaren zorion betea izango dogula betiko,
eurekin batean,
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez;
beronen eskuz emoten deutsazuz ondasun guztiak munduari.
Honen bitartez, honekin eta honengan,
Zuri, Jainko Aita ahalguztidun horri,
Espiritu Santuarekin batean,
ospe eta aintza guztia gizaldi eta gizaldi guztietan.
Amen.

Salbatzaileak agindu eta irakatsiari jarraituz,
bildur barik esan dagigun:

Gure Aita, zeruetan zarana:
santu izan bedi zure izena,
etor bedi zure erreinua,

egin bedi zure nahia zeruan bezala lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
parkatu gure zorrak,
geuk ere geure zordunei parkatzen deutsegun ezkero,
ez eiguzu itzi tentazinoan jausten,
baina atara gagizuz gatxetik.

Atara gagizuz, Jauna, gatx guztietatik;
emoiguzu bakea gure egunotan;
zure errukiari esker pekatutik garbi bizi gaitezan
eta estualdietan sendo,
betiko zorionaren itxaropenean,
Jesu Kristo gure salbatzailea noiz etorriko dan zain gagozala.

Zeurea dozu erregetza,
zeureak ospe eta indarra orain eta beti.

Jesu Kristo gure Jauna, Zeuk esana da Apostoluei:
«Bakea izten deutsuet, neure bakea emoten»:
Begira zeure Eleizearen sinismenari eta ez gure pekatuei
eta, zeure gogoa danez, emoiozu Eleizeari bakea,
emon batasuna.
Errege bizi zara-eta gizaldi eta gizaldietan.
Amen.
† Jaunaren bakea beti zuekin.
—Eta zure espirituarekin.
† Emoiozue bakea alkarri.

Jaungoikoaren Bildotsa, Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: erruki, Jauna.
Jaungoikoaren Bildotsa, Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: erruki, Jauna.
Jaungoikoaren Bildotsa, Zeuk kentzen dozu munduko pekatua: emoiguzu bakea.

Hona hemen Jaungoikoaren Bildotsa,
hona munduko pekatua kentzen dauana.
Zoriontsuak Jaunaren mahaira deituak!

Jauna, ni ez naz inor Zu nire etxean sartzeko;
baina esaizu hitz bat eta osatuko naz.

Kristoren Gorputza.
Amen.

**JAUNARTZEAN**

**MAITASUNA BAKEAREKIN BATERA**
Eskeintzeko nator esku emotera.

[1] *Alkarturik gaudenean Jaunaren aurrean*
*bardin izan behar dogu kalean.*

[2] *Anaitasun jatorrean esku emotean*
*bihotza senti behar da bakean.*

**JAUNARTZE ONDORENGOA**

Hartu dogun zerutar ogiaz indarbarriturik, Jauna,
apalik eskatzen deutsugu:
zure aingeruak zaindari doguzala,
egin daigula kementsu aurrera salbazino-bidean.
Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

**Agurra**

Orain geuri dagokigu *deabruak menperatzea:* gure hozkeria, geurekeria, itzikeria... eta alkartea eraikitzea: Jesus berbiztuaren Barri Ona iragarten dauan Eleizea. Migel Goiaingeruak eroan gaizala bere hegoetan.

**ALKARTUTA GOAZEN AURRERA KANTARI,**
**BIDEAK ZABALDUZ BETIKO POZARI (bir).**
*Maitasun ta zuzentasunez dezagun*

*lortu anaien askatasun,*
*Badator-eta Jaunaren betiko egun.*
*Hor dugu distiratsu egunsentiko argitasun.*

Egoki da, bai, eta zuzen, bidezko eta sal-ba-ga-rri, no-na-hi eta

beti guk Zuri eskerrak e-mo-te - a, Jauna, Aita guz-tiz san-tu,

Jainko ahalguzti - dun be - ti - ko ho-rri. Eta zu - re handitasuna

gorestea, aingeruak eta goiaingeruak os-pa-tze-an. Ho-rre-ei emoten

deutsegun ospeak Zeu goresten zai-tu, Jau-na, eta horre - ei autortzen

deutsegun edertasunak erakusten deusku Zu neurribakoa za-ra-la

eta guztiak baino gorago - ko - a, Jesu Kristo gure Jau - na -

ren bi - tar - tez. Honen bitar - tez dau aingeruen tal - de - ak

zure santutasuna go - res - ten eta, eurekin batean geuk ere pozik

adoratzen zai - tu - gu bi-hotz ba - tez kan - ta - ri: